# HERRIALDE BERDEA

IHARRA-REN IZKRIBUA
XANKI-REN IRUDIAK



Beren herrian askatasunaren zerbitzutan giltzapeturik gertatu diren guztien gorasarrean.

Munduko herri zapalduetako haur guztiei eskainia.

Ez dakit noiz, bazen herri bat itsas urdinaren ertzean. Zelai berdez inguruturiko arrantzale-herri txiki bat zen.

Han ikusi zitekean, nola goizean, laino artean, berdea samur eta urdinabar egiten zen. Nola, behin ere dirdiratsu ez zen eguzkiaren argiak ikutzean, berdea bizi-bizi eta nabarmen bihurtzen zen. Nola zen argitsu eta berri urteburuko hainbeste egunetako euri pozgarriz. Nola bihurtzen zen ia beltz ilunabarrean, eguna hiltzean...

Guztiz polta zen. Ikusi zitezkean han, izan ere, berde tankera guztiak!

Jendea zoriontsu bizi zen herri hartan. Nork bere etxea zuen eta ez zitzaion inori bizi-lekurik falta. Kaiko etxeak dira marrazkian agertzen diren horiek. 13-garrenean bizi da Andoni-ren familia: haren guraso eta anai-arrebak.

KAIXO! ANDONI NAIZ.
HERRI HONTAN
JAIO ETA BETI
BERTAN BIZI IZANA.
AITA ARRANTZALEA
DUT...

GAUR GOIZALDEAN, ITSASORA
IRTEN GARA.
ILUNABARREAN, ARRAINEZ
JOSIRIK ITZULIKO GARA
SARDIÑA
ETA
BOKARTA



TXALUPEN ETORRERA IKUSTEA GUZTIZ ZAIT ATSEGIN... **IKUSGARRI IZATEN DA!**

HASERAN TXALUPAK TXIKI DIRUDITE, BEGI BAT HERTSIAZ, ESKUARREAN DITUZULA DIRUDI.

HERRITIK HURBILAGO, ETA HANDIAGO AGERTZEN DIRA; HERRIAN JENDEA ZAIN DAUKATE ARRAINA ATERATZEKO.

KAMIOIEZ ARRAIN ASKO DARAMATE ATZERRIAN SALTZEKO; GAINERAKOA, KAI INGURUKO KONTSERBA-LANTEGIETAN ENPAKAN IPINTZEN DUGU.

ETA, JAKINA, UGARI JATEN DUGU ARRAIN FRESKO HORI, HAIN GOZOA IZATEN DA ARDO GORRI ETA BARAZKIEKIN!



TXALUPAK HUSTUTZEAN, ARRANTZALEAK, HONDARTZAN EDO KAIKO KALEAN ZABALTZEN DITUZTE SAREAK.
EMAKUMEEK BERTAN KONPONTZEN DITUZTE URRATURIKOAK.
ENE AMA, MIREN, ETA EDURNE, ARREBA GAZTEENA, SARE-KONPONTZAILE AZKARRAK DIRA; ERRAZTASUN HANDIAZ ERABILTZEN DUTE ORRATZA SAREAN ZEHAR...
BAINA, NIRI EZ DIDATE UZTEN UKITURIK ERE EGITEN!



GU, IKASTOLARA JOATEN GARA ETA IRTETEAN HAMAIKA JOLASKERAZ JOSTATZEN GARA, GARAIAN GARAIKOAN; NEGUAN PELOTA GEHIAGO, IGERI EGINDA.

NEGUAN, GAINERA, BESTE JOKU BITXIRIK EGIN OHI DUGU.

KANTU-SAIOTIK IRTETEAN -HERRIAK KANTUA ASKO MAITE BAITU-, PRAKEN ORDEZ JERTSEA JANTZIRIK, KORRIKA-APUSTUAK EGITEN DITUGU.

HORRELA BEROTZEN GERA...

SAIATU AHAL ZARETE INOIZ HORTAN?



Herri hura bere lanez bizi zen poz eta adiskidetasunean.

Antzina, guda eta gorrotoa ezagutu zuen, bai; herriko zaharrek maiz gogorazten zuten horrelakorik. Kanpora arrain-karreatzaileek ere, beste herrietako gudu eta porrokaldien berri bazekarten... Baina, herri hura txiki eta baketsua zen: tarte txikia egun batetik bestera.

Halere, goiz batez, txalupak itsasoratzean, zur eta lur gelditu ziren: gudontzi ikaragarri bat, haietako inork behin ere ikusi ez bezalakoa, herriko kairuntz hurbiltzen zetorren.

Txalupak pozik joan ziren ongietorri egitera, izan ere herri-berdeko jendea, zetozen arrotzentzat adiskide eta bihotz-oneko zen.

Ontzi handia kairuntz gidatu zuten, baina, hain handia baitzen, barruraino ezin helerazi izan zuten eta horregatik kaitik at gelditu zen; mendi berdearen ondoan itzal beltz handia.



Ontzitik gizon batzuk jaitsi ziren. Hauzoko herrialdeko guda-mutilak zirela eta bakezko hotza eman zieten.

Atzerritarrak pozik hartu zituzten herrikoek, eta beren etxeak eskaini ere bai; herria-berdean, egun hartan, jai egin zuten.



Baina, eguna joan eguna etorri... guda-mutil haiek ez zihoazen! Beti bertan geroz eta ugariago; gezurra zirudien hainbat jende ontzi batetan.

Hasera hartan, guda-mutilak jator ibili ziren eta galdera asko egiten zuten. Baina, piskanaka, aldatu egin ziren. Eta jendea beren zerbitzurako hartzen hasi ziren eta dendetan zorretan hartzen; txalupa ederrenak, nahiz etxe handienak, nahiz kamioiak beraientzat nahi zituzten.

Hau ikustean, herritarrak beldurtu egin ziren eta elkarri galdetzen zioten guda-mutil haiek adiskideak ote ziren.

Egun batez, guda-mutilek Andoni-ren etxera joan eta gurasoei etxetik irtetzeko agindu zieten, gudal-etxe nagusia han ezarri nahi zutela-eta. Andoni, begiak handi bezain zabal gelditu zen guda-mutil haiek etxea huztutzen ikustean; etxe polit, xuri, beti bizi izan zireneko hura.

Baina, are harrituago egin zen, guda-mutilek zelai berdeak margoz aldatu nahian ikustean; herri-berdeari beste herrien ondoan bere nortasuna ematen zion margoa aldatu nahian, alegia.

Eta nola egin zuten? Honelaxe: Ehunka guda-mutil eskuan erratza eta helikopteroetan hegale, zelai berdeak, beren herrialdetik ekarririko hori garrasitsuz margotzeari ekin zioten. Izan ere, Guda-mutil haien herrialdeko soro eta zelaiak, gari eta eguzki kiskalgarrien antzo, hori baitira.

Hau ikusiaz, ordurarte zer pentsa eta zer ez jakinean egoniko herriko jendea, egiaz jabetu zen; guda-mutil menderatu eta herria antz-aldatu.

Eta zergatik hori? galdetuko duzue. Zergatik nahi lezake herri hori batek, beti berde izan den herri bat hori bihur eraztea? Hau gertatzea gezurra dirudi. Gizon-emakume berekoitz eta handizaleek, ordea, beren bihotzetan daramate gaiztakeria; beti diru eta indar-amets bizi dira, besteen lepotik izango bada ere. Hortarako, euren ondotik guda-mutilak dakazte.

Herrikoak bildu ziren eta luzaro hitz egin ondoren, gudalburuengana jo zuten honela galdezka: ea, zergatik beraien etxeez jabetu eta herria horiz margotu zieten.

Jendea, arrain-multzo antzo, kalean behera jaitsi zen gudal-etxe nagusiruntz; Andoni-ren etxeruntz, alegia. Egun hartan denak herrian ziren.

Gizon batzuk sartu ziren gudalburuekin hitz egiteko.

Eta gauza harrigarri bat gertatu zitzaien: beren herriaren alde hitz egitera joan, eta herri horiaren aurka zihoazeneko salaketa leporatu zieten gudalburuek, alajaina. Suturik esan zieten, herri-berdea ez zela berde; beti hori izan zela. Zelaietara begiratzeko. Gizon haiek, jota gelditu ziren; ezin sinets entzunikoa.

Gogor eraso zieten gudalburuei, eztabaidan zorrotz: "Gure herria eta lurra berdeak dira eta gu gara jabeak, bertan jaio baikara, hemen bizi eta lan egiten dugu!"

*Gudalburuek, gero eta haserreago, agintzen hasi ziren.* Eta berehala, guda-mutilak gainean ziren. Banaka batzuek, hitz egin zutenak atzeman eta lantegi batean hertsi zituzten, han espetxerik ez baitzen. Beste batzuek, gudaletxe aurrean zegozenei eraso zieten. Enparantza hustu zenean, batzuk lurrean luze agertu ziren.

Egun hura, samin-aldiaren hasera izan zen.

Ordurarte pozik bizi izan zen arrantzale-herri koxkor hura, negar-herri bihurtu zen; askatasun bila ezin ba geldi egon; etsaia bota egin behar zen, zelaiak, lehengora, berde bihurtu.

Herriko jendeak, batez ere gazteek, neska-mutilek, nola joka aztertzeko batzar egiten zuten. Sailka kaleratzen ziren, deihadarka, aurpegia emanez. Gauez, zelaietako horia garbitzen iharduten zuten. Guda-mutilak, berriz, haien atzetik beti.

Asko, giltzapean sartu zituzten; batzuk zigortu, lagunen izen eta gordelekua ateraztearren.

Zenbait, txepel edo saltzaile, beldurrez edo diru gosez, beren adiskideen salatari bihurtu ziren... herriko jendea errezeloa sortu zen hezurretaraino.

Eta itsaz-olatu baten gisa, egunetik egunera burruka areagotzen ari zen: gudalburuak buru-belarri zebiltzen ba, herria menderatu beharrez; guda-mutilak, herri nahasle eta gaiztagin batzuen aurka ari zirelakoan zegozen; eta herri-berdekoek, beren bizia gorde nahi zuten.

Hura herriaren aldakuntza: herri zoriontsu izana, gorroto eta beldur-zulo egin zen!

Denbora igaro zen. Egunak eguna zekarren: bata bestea baino garratz eta beltzagoa.

Nahigabe haren zurrunbiloan, Andoni hazten eta gizontzen ari zen. Bere herria, lehengoa ez zela ikusten zuen; kalean, zaharrak, haurrak eta guda-mutilak bakarrik; gainetikoak espetxean edo mendian ziren.

Andoni ezin jabetu zen zori hartaz, eta bihotza erdibiturik saminez!

Kalean zehar zihoan arratsalde batez, kantoi batetan hiri-zain zegoen guda-mutil ile-gorri eta argal batengan ezarri zituen begiak. Eta bat-batean, buruak hauxe eman zion: gertatzen ari denaren arrazoina galdetu behar diot. Burutapen ausartia; izan ere, inork ez baitzuen bekokirik guda-mutilei hitz egiteko. Baina, Andoni-k ez zuen birritan pentsatu.


ADI ZAK: ZERGATIK DAGO HAINBAT HERRITAR ESPETXEAN? ZER GAITZ EGIN DIZUEGU?

Guda-mutila harri eginik gelditu zen, zer erantzun ez zekiela.

AH!... BA... BA... GU...
zuzen eta
bake-mutil
gaituk eta
lepagogorrak
zigortu
egiten
dizkiagu



GUK GEURE HERRIA LEHEN BEZALA BERDE NAHI BADUGU, ZER KALTE ZUEN HERRIARENTZAT?



Guda-mutilak ez zekien zer egin, heldu ala tiro bat eman.

Ez zuen egin ez bat eta ez beste; baizik eta bihotz koloka baten ahotsez honela deihadar egin zuen: Alde hortik, eureak eta bost hartu nahi ez badituk!

Andoni-ren hanka-soinua kalean behera! Kito! Ez zegok ezer egitekorik.

Baina, behar bada oker zebilen.



Guda-mutil hura nahasturik geratu zen. Zer alde mutikoak esan zionetik gudalburuen hitzaldietara! Gaua iristean, ezin lo hartu; hitz haiek ez zioten bakean lagatzen. Herri horia, bere herria zerabilen buruan; han atzerritarrak indarrez sartu zirela amets egin zuen. Eta gauza ber-bera egiten ari ziren beraiek herri-berdearekin. Ohean, pentsa eta pentsa egon zen, batera eta bestera.

Goizean hortaz hitz egin zien lagun batzuei eta piskanaka, ur-geldi batetan erortzen den harriaren antzo, 23-gn gudari-taldean zehar galdera hau zabaldu zen: zertan ari gara, gero?

Egun batzuen ondoren, garbi ikusi zuten. Zelai bat garbitzen ari ziren gazte batzuk jotzeko gudalburuak agindu zienean, jaramonik ez ez zioten egin. Gudalburua, su eta gar jarri zen; baina, 23-gn taldeko guztiak tente.

Eta hori bakarrik ez; gainera, gudari haiek espetxeruntz laisterka joan eta ateak ireki zituzten. Pentsa dezakezute, giltzapean zegoen gizon, mutil eta neska haien poza. Eta beraien familia eta adiskideena!

Denek batera, pintura-urtzailea ontzi handitan hartu eta pozezko deihadar eta abestien artean zelaietako margo horia kentzen hasi zen.

Baina, egun hura ez en pozgarri denentzat. Gudalburuek hestutasunezko batzar bat egin zuten. 23-gn taldekoei agindua betetzeko eskatu zieten gogor eta zemaka. Baina, dena alderrik. Gizon haiei ez zien berriro ziririk sartuko: norberaren herria zerbitzatu eta maitatzeko, beste inorenik zertan zapaldu ez zegoela ohartu ziren.

Gudalburuek, suak hartrik, arazoa gogor hartu zuten. Gainerako "gudari leialak" bildu eta lepagogor guztiak, herritar nahiz gudari, atzemateko agindu zieten.



Hori lortzen, ez zuten lan handirik izan, iskiluz ondo jantziriko hogei gudoste baino gehiago baitziren herriko jende eta hauen gudari- adiskideen aurka.
Batzuk hil, asko mendira edo herrian bertan izkutatu; hamaika bai, ordea, espetxeratuak



Giltzapeuak, lurrean jarririk, gertatuaz mintzo ziren. Eta zenbait arrantzalek, goibel, beltz ikusten zuen herriaren geroko zoria; izan ere herri horiko gudostea handia eta iskiluz lepa-hezurreraino josia baitzen. Baina, Andoni-rekin mintzaturiko gudari ile-gorri hark, zititu eta honela hitz egin zien:


EGIA ETA ZUZENA GEUK DITUGU; ETA BEHAR BEZALA, ETA GURE HERRIAK BURRUKA EGITEKO MODUAN, ERABILTZEN BADITUGU, ORDUAN, SINETSITA NAGO ARRUNT, KONPRENITU EGIN BEHARKO DUTE ENE ANAIEK; ETA ZUEN HERRIA BERDE IZANGO DA BERRIRO, ETA GURE BI HERRIOK ASKE ETA BEREN BURUEN JABE!

Iluntzean, Andoni, adiskide batzuen etxean gorderik zegoen. Arratsaldeko burrukaren ondoren, lur-jorik geratu zen, eta bazter batetan jarririk negar zegien. Halako batez, norbaitek deitu ustean bezala, leihora jo eta ireki egin zuen. Eta bere baitan, gainezka nabarituzuen itxaropena.



... nabaritu zuen itxaropena ...